# Internet ikasgelan: Wikiak

Agurne Aizpitarte, Natxo Guillén

*Lan honetan "Wiki"direlakoen ezaugarrien berri eman nahi dizuegu eta, horrela, aspaldian hasitako bideari jarraipena eman. Lehendabizi, Blogak izan ziren (Hizpide 59), gero WebQuestak, eta, Altxorraren Bila (Hizpide 60). Oraingoan Wiki-en txanda da.*

*Artikuluan zehar Interneteko lanabes horren nondik norakoak hizkuntzen ikas-irakaskuntzan aztertzen saiatuko gara, beti ere, konstruktibismoa oinarri harturik, eta, gaur egungo Informazio eta komunikazio gizartearen paradigmari erreparatuz. Hasteko, ikus dezagun, bada, Wikiak zer diren.*

## Zer da Wikia?

Web orri sinple bat da Wikia. Baina web orri tradizionalekin alderatzen baldin badugu abantaila handi bat du: edozeinek editatu ahal duela. Hau da, edozein erabiltzailek egin ditzake aldaketak oso modu erraz eta azkarrean. Horren ondorioz, tresna ezin hobea dugu talde-lanerako. Azkartasun horren adierazle *Wiki* izena dugu, Hawaieraz Wiki-Wiki izenak azkar esan nahi baitu.

Lehenengo Wikia Ward Cunningham-ek egin zuen 1995ean.

Wikia sortzeko ez da informatikan iaioa izan behar. Beldurrik gabe idatzi ahal da erroreak azkar asko konpontzen direlako. Erabiltzaile batek aldaketak egiten dituen bakoitzean Wikiak bertsio berria eta zaharra gordetzen ditu eta, ondorioz, aukera izango du biak elkarrekin alderatzeko.

Wikiaren sortzailearen esku dago nori eman editatzeko baimena, nori bakarrik irakurtzekoa, edo denentzako sarbide librea utzi, nahi hainbat aldaketa egiteko.

Ezaugarri horiek guztiak kontuan izanda, hizkuntzen eta gure kasuan euskararen ikas-irakaskuntzan oso tresna baliagarri izan daitezke Wikiak.

**Konstruktibismoa eta Wikiak**

Ezagutza gizakiok eraikitzen dugu. Ekintza hori aurretik ditugun ezagutzetatik abian jartzen da. Irakaslearen rola erabat aldatzen da, beraz, ikaslea ezagutzaren sortzailea delako eta irakaslea ez delako izango ezagutzen iturri bakarra. Irakasleak bitartekaritza-lana egingo du ezagutzaren eta ikaslearen artean, azken honek beharrezko dituen lanabes eta bitartekoekin hornituz. Oso garrantzitsua da irakasleak ikasleen aurretiko ezagutzen diagnosi egokia egitea ikas-prozesua modurik eraginkorrenean abiarazteko.

Prozesu horretan, wiki-en ezaugarriak oso ondo txertatzen dira: irakasleen eta ikasleen arteko komunikazioa sustatzen dute; berdinen arteko elkarreragina bultzatzen dute; lan-taldean aritzeko aukera ematen dute; ikasleak erabakiak hartzera bultzatzen dituzte lan autonomoa eta talde-lana batera elkartuz.

*Eduteka.org*-en (www.eduteka.org) honelaxe zerrendatzen dituzte konstruktibismoaren ikuspuntutik ikasleengan sustatu beharreko estrategiak lan taldean aritzeko:

- Talde lanean parte hartze aktiboa izatea.
- Taldean hartutako konpromisoak betetzea.
- Behar denean besteei laguntza ematea eta norberak behar duenean eskatzea.
- Norberaren alde onak besteen esanetara jartzea.
- Besteen ikuspuntuak onartzea.
- Besteen beharrak ulertzea.
- Guztiontzat baliagarriak diren irtenbideak topatzen saiatzea.
- Jarduerak besteekin alderatzea.
- Helburuak, atazak, baliabideak, eta rolak definitzen laguntzea.
- Kritikak egitea eta onartzen jakitea.
- Ideiak azaltzea eta argudiatzea, besteenak onartzea.
- Pisuzko argudio baten aurrean amore ematea.
- Besteek egindako lanak eskertzea.
- Negoziatzea.
- Pertsonen arteko gaitasunak garatzea.
- Prozesu demokratikoekin ohitzea.

Horiek guztiak lantzeko eta bultzatzeko Wikiak lanabes ezin hobeak dira.

**Nola sortu Wikia**

Hurrengo pantailan dugu wiki bat. Wiki hori Wetpaint zerbitzarian egin dugu. Zerbitzari horretan beste batzuetan baino errazagoa da wikia sortzea, doanekoa da eta zerbitzu asko eskaintzen ditu.

Momentuz ez dago Wikia euskaraz egiteko lanabesik. Eta gaztelaniaz bakarra dago: http://wiki.mailxmail.com/, eta beste zerbitzari batzuek baino aukera gutxiago ematen ditu lanerako.

Honako hau Wetpaint zerbitzarian egin dugu:

1




Hurrengo pantailetan Wetpaint zerbitzarian wiki bat sortzeko instrukzioak dituzue.

Sartu hurrengo helbidean: http://www.wetpaint.com

.2:



Hurrengo pantaila agertuko zaizu.

"*Create a name*": hemen jarri behar duzu zertarako erabiliko duzun wikia. Adibidez: Idazten ikasteko tailerra

"*Create a URL*": hemen jarriko duzu zure wikiaren izena eta horrela helbidea osatuko duzu, adibidez: http://idazketatailerra.wetpaint.com

"*Keyword tags*": hitz gakoak dira. Komak erabili behar dituzu horiek banatzeko, adibidez: planifikazioa, testualizazioa, berrikusketa, lankidetzazkoa.

*3*



Edozeinek irakur dezake zure wikian idazten duzuna, baina zeinek idatzi eta editatuko du?

*4*



1 "*Atea*": hemen klikatzen baldin baduzu edozeinek idatzi eta editatu ahal izango du zuk sortutako wikian. Anonimoak baldin badira ere bai.

2 "*Giltza*": anonimoek izan ezik, beste guztiek izango dute idazteko eta editatzeko ahalmena.

3 "*Gutunazala eta giltza*": hemen klikatzen baldin baduzu bakarrik zure gonbidatuek izango dute idatzi eta editatzeko baimena.

Aukeratu ondoren, klikatu geziak markatzen duen estekan 2. pausoarekin, "*the fun part*"-ekin, jarraitzeko. Orain aukeratu beharko duzu fondoa.

Horretarako, zure gustukoaren azpiko borobilean klik egin.

5



6




Geziak markatzen duen estekaren gainean klik egin eta logo bat eransteko aukera emango dizu, bai zure pc-an gordeta duzuna (*my computer*), bai internetetik bertatik (*on the web*). Bukatzeko "*add image*" sakatu.

7



8



Hirugarren pausoa:

Klik egin hurrengo pantailan geziak markatzen duen estekan.

9



***Wetpaint*-en** kontu bat sortu behar da.

Horretarako zure datuak sartu beharko dituzu hurrengo pantailan:

- "*username*" edo erabiltzailea izango da wikian besteek ikusiko duten izena.

- "*password*" edo pasahitzak 6 hizki baino gehiago behar ditu
- Bukatzeko izena eta abizena jarri behar dira baina ez dira inoiz publiko egingo.

*10*




Azken bi koadrotxoak markatu eta bukatutzat emateko hurrengo pantaila agertuko zaizu:

*11*




Geziaren gainean klik egin eta sortu duzun Wikira joango zara.

12




### Wikiak sortzeko zerbitzari batzuk

Hurrengo zerbitzarietan Wikiak doan eta ezer instalatu gabe sortu ahal dira. Eskatzen den bakarra da erregistratzea:

Wetpaint: http://www.wetpaint.com

Wikispaces: http://www.wikispaces.com/

The MoinMoin Wiki Engine http://moinmoin.wikiwikiweb.de/

Seedwiki: http://www.seedwiki.com/

EcoWiki: http://www.ecowiki.org/

Hemen duzu EcoWikin irakasle eta bere ikasleek egindako wiki bat adibide moduan:

http://www.ramoncastro.es/contenido/ecowiki/index.php/Portada

Wikia: http://www.wikia.com/wiki/Wikia. Wikipediaren sortzaileetako batek sortu du Wikia: Jimmy Walesek

Beste batzuk. Instalazioa eta *hosting*-a edo ostalaritza behar dute: Mediawiki, Tikiwiki, Phwiki...

### Wikiak auskararan ikas--irakaskuntzan. Adibide praktiko bat

Arestian Konstruktibismoaren marko teorikoan kokatu ditugu Wikiak. Marko horren barruan metodologikoki lan kolaboratiboa dugu. Baina zer esan nahi dugu lan kolaboratiboa esaten dugunean? Batzuetan, talde--lanarekin nahasten da, baina hori baino gehiago da.

Bi hitzetan esanda, elkarlanean, taldeko kide bakoitzak bere ezagutza eta eskarmentua besteen esku jarri behar ditu eta elkarrekin trukatu. Trukaketa horretan oinarrituta, ikasle bakoitzak dituen hutsuneak osatu-

ko ditu eta aurrera egingo du ezagutzan eta, aldi berean, egin beharreko lanean denen artean produktu bakarra eta hobetua ateratzeko.

Wiki teknologia erabiltzeko erraza eta malgua denez, oso egokia da lan kolaboratiboak egiteko.

Irakasleen arteko lanak aurrera ateratzeko oso erabilgarriak izan daitezke Wiki-ak, esaterako materialak sortzeko edo eraberritzeko, aldaketak egiteko aukera ematen baitute. Foro moduan erabilita, bilerak edo bileretan komentatu beharreko gaiak aurretik edo ostean lantzeko edo sakontzeko.

Azkenik, ebaluazioa egiteko oso egokia da maila berean dauden irakasleen artean bakoitzaren ordutegiari erreparatu gabe.

Ikasgelan Wikiekin egin daitezkeen lan-moten sailkapena luzea litzateke. Zertarako erabili Wikiak?:

- Taldeka glosategi bat idazteko.
- Ikasleen portfolioa egiteko.
- Proiektu bat egiteko.
- Beharrezkoa den informazioa gordetzeko.
- Kategoriatan sailkatuta, ikasleak hartu dituen apunteak gaika ordenatuta gordetzeko.
- Idazketa lankidetzazkoa gauzatzeko…

Baina hemen ez dugu taxonomia oso bat egiteko asmorik. Oraingo honetan, interesgarriagoa iruditzen zaigu adibide bat jartzea ikusteko nola landu daitekeen idazketa lankidetzazkoa Wiki bat erabiliz:

Nola gauzatu idazketa lankidetzazkoa Wikiaren bidez?

- Wikian idazmenaren fase bakoitzari buruzko informazioa gorde eta lanak egin ahal dira.

http://idazketatailerra.wetpaint.com

Hemen dugu gure idazmena lantzeko ikastarorako prestatzen ari garen Wikia.

13




Idazketa prozesu moduan planteatzen baldin badugu, garrantzia emango diogu idazketaren fase bakoitzari: planifikazioari, testualizazioari eta berrikusketari.

Wiki batean etiketak jarri ahal dira faseak sailkatzeko, adibidez "planifikazioa"ren gainean klik egiten baldin badugu bertan egin ahal izango ditugu etapa honi dagozkion lan guztiak. "Zirriborroak" izeneko azpiatal bat ere ireki dezakegu bertan zirriborro guztiak sailkatu eta gordetzeko. "Ideia jasa" izeneko beste bat taldekideek ideia jasa egiteko...

- Idazketa proiektua gauzatzen ari diren lan-taldekoentzat eztabaidatzeko gunea dute. Eztabaida-gunean etengabe negoziatu ahal dute egiten ari diren lana.
- Wikiak lehendik egindakoak gordetzen dituenez, bertsiorik onena zein den erabaki eta gorde ahal da atzera jotzeko aukera ere badagoelako.
- Ikasleen lanak beste batzuek benetan irakurri ahal dituztenez, lan egiteko motibazioa eta ondo egiteko gogoa areagotzen dira.
- Parte hartzaile bakoitzak berak nahi duen jendea gonbidatu ahal du bere lanak ikusteko...

### Bibliografia. Helbide interesgarriak


http://aulawiki.wikispaces.com irakasle talde batek ireki duen Wikia. Wikiek ikasgelan izan ditzaketen aplikazio didaktikoez hausnartzeko.

http://wiki.gleducar.org.ar Wikipediaren erabilera eskolan.

http://ciberperiodismo.com Gorka Palazio irakaslearena.

http://es.wikibooks.org Testu liburuak eta beste.

http://www.ramoncastro.es/contenido/ecowiki/index.php/portada ekonomia irakasten duten irakasleek gaiari buruzko ekarpen didaktikoak egiteko Wikia.

http://eu.wikipedia.org wikipedia euskaraz.

http://www.wikilearning.com komunidade desberdin asko gai desberdinen gainean elkartzen dira ikasteko.

http://relatos.schtuff.com Felipe Zayas irakaslearena.

http://gramatica.wikispaces.com Felipe Zayas irakaslearena.

http://www.wikinovela.org hiru hizkuntzatan eta askoren artean idatzitako eleberria.

http://docs.moodle.org/es moodle-i buruzko wikia.

http://jotarp.org blog honetan wikiei buruzko informazio baliagarria dago.